# OSPAKIZUNA

**URTEAN ZEHARREKO XI. DOMEKEA - A**



**SARRERA**

-Egunon eta ondo etorriak fedearen ospakizun honetara.

Geure borondatez, etorri gara elizara. Aintzinan sinagogan alkartzen ziran lez, gaur ere Jaunaren Hitza entzun eta geuganatu nahi dogu.

"Hutsean hartu dozue, emon hutsean" esango deusku Jesusek gaurko ebanjelioan.

Agertu deiogun geure esker ona, bere maitasunez zaintzen gaituan eta bere Barrionaren mezulari izatera deitzen gaituan Jainkoari.

***Zein gozo ta eder dan anaiok alkartu,***
***Eta danok batera Jainkoa goratu.***

**AGURRA**

+ Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.

-Amen.

**DAMU-OTOITZA**

Senideok: gu pekatariak izan arren, maite izan ginduzan Jaungoikoak; guk, ostera, beti bilatzen doguz atxakiak alkar maitatzeko orduan.

Damutasunez, parkamena eskatu dagigun:

-Jesus Jauna, zure guganako maitasunean sinistu ez dogulako. E.Jauna.

-Jesus Jauna, geure onari eta geuri komeni jakunari

bakarrik begiratzen deutsagulako. Kristo Erruki.
- Jesus Jauna, zeure odola ixuriz gure pekatuak parkatu dozuzalako. E. Jauna.

Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua eta, gure pekatuak parkaturik, eroan gagizala betiko bizitzara. Amen.

**AINTZA**

Jesusen Aita Jaungoikoa eta bien arteko Espiritua ditugu lagun. Goratu dagiguzan kantuz***: Aintza…***

**OTOITZA**

+ Jainko jauna, Zugan itxaroten dabenen indarra,
Entzun bihotz onez gure otoitza;
Eta, Zu barik gizonaren makaltasunak ezer ezin dauan ezkero,
Emoiguzu beti zure graziaren laguntza,
Zure aginduak beteaz,
Zuretzat atsegingarri izan gaitezan gogoz eta egitez.
Zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

# HITZAREN LITURGIA

**Ex 19, 2-6a:**

Jaungoikoak Israel Herria bere herri berezitzat aukeratzen dau. Baina baldintza bat jarten deutso: bere berbea entzun eta bere alkargoa gorde dagiala.

**Egun hareetan, israeldarrak Sinaiko basamortura heldu ondoren, bertan ipini ebezan oihal-txabolak, mendiaren aurrez-aurre.**

**Moisesek Jaungoikoagana igon eban. Eta Jaunak menditik dei egin, eta esan eutson: "Honan berba egingo deutsazu Jakoben etxeari, eta hauxe iragarriko israeldarrei: "Ikusi dozue egiptoarrei egin deutsedana, eta zuok arrano-egoetan eroan**

**zaituedazana eta Neugana erakarri.**

**Orain, beraz, benetan entzuten badozue nire berbea, eta nire alkargoa gordeten, zeuok izango zaree nire ondasun berezia, herri guztien artean, lur osoa neurea data; zuok, barriz, abade-herri eta herri santu izango zaree Niretzat".**

**Erantzun salmoa: 99**

***Jauna, zure maitasuna, abestuko dot, betiren beti.***

**Lurtar guztiok, egin irrintzi Jaunari,**
**Jaunari zerbitzu alai egiozue,**
**Haren aurrera pozez oihuka sartu zaiteze.**
**Jakizue Jauna dala Jainko,**
**Berak egin gaitu, Berarenak gara,**
**Beraren herri eta larrako artalde.**
**Onbera dalako Jauna,**
**Haren maitasuna betiraino,**
**Haren leialtasuna mendeen mendetaraino.**

**Erm 5, 6-11:**

Jaungoikoaren guganako maitasuna ez da guk irabazi dogun zerbait. Jaungoikoak, bera ona dalako, maite gaitu; pekatariak izan arren ere, maite gaitu.

**San Paulo Apostoluak Erromatarrei:**

**Senideok: Oraindik indar barik gengozala, Kristo, bere orduan, gaiztoen alde hil zan. Nekez hil daiteke norbait gizon zuzen baten alde; gizon on baten alde, baleiteke norbaitek hil nahi izatea.**

**Baina honetan erakusten dau Jaungoikoak guretzat dauan maitasuna: gu pekatariak ginala, Kristo gure alde hil zan-eta.**

**Beraz, orain Haren odolaz zuzentasuna lortu dogun ezkero, askozaz gehiago salbauko gara**

**hasarretik, Berari esker.**

**Arerio ginala, Jaungoikoagaz adiskidetuak izan baginan, bere Semearen heriotzeari esker, askozaz gehiago salbatuak izango gara Haren biziari esker, adiskidetuta gagozala. Gehiago oraindino: harrotu ere egiten gara Jaungoikoagan, Jesukristo gure Jaunaren bidez; orain, Beronen bidez, Jainkoagaz adiskidetzea lortu dogu-ta.**

**Mt 9,36 - 10, 8:**

Jesusek, bere salbamen ekintza aurrera eroateko, hamabi lagun, apostoluak, aukeratzen ditu eta, bere izenean barriona zabaltzera eta geixoak osatzera bialtzen ditu.

**+ Jesukristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik**

**Aldi haretan, herririk herri eta auzorik auzo ebilen Jesus, hareen sinagogetan irakasten, erreinuko barri ona iragarten, eta gatx eta min guztiak osatzen. Giza taldeak ikustean, erruki izan ebazan, nekaturik eta lurra jota egozalako, artzainik bako ardiak lez.**

**Eta orduan ikasleei esan eutsen: "Solo-aria ugaria da, baina langileak gitxi: Egin, beraz, otoitz solo jabeari, bialdu dagizala langileak bere solora".**

**Jesusek bere hamabi ikasleei dei egin eta ahalmena emon eutsen espiritu lohiak uxatzeko, eta gatx eta min guztiak osatzeko.**

**Hamabi apostoluen izenak honeek dira: lehenengoa Simon, Pedro deritxona, eta Andres, honen anaia; Santiago Zebedeorena, eta Jon, honen anaia; Felipe eta Bartolome, Tomas eta Mateo zerga-batzailea, Santiago Alfeorena eta Tadeo; Simon Kanaandarra eta Judas Iskariote, saldu ebana bera.**

**Hamabi honeek bialdu zituan Jesusek, ohar honeek eginez: "Ez joan jentil lurretara, ez sartu Samariako herrietan; zoaze, ostera, galduta dabiltzan Israel-etxeko ardietara. Eta bidean zoazela, iragarri egizue hurrean dagoala zeruetako erreinua. Osatu egizuez gaixoak, biztu hilak, garbitu lepradunak, uxatu deabruak; hutsean hartu dozue, emon hutsean".**

## GOGOETA

Orain dala hiru aste Pazkoari amaiera emon geuntson, gero, Hirutasun Santuaren eta Gorpuzti jaiak ospatu genduzan ta orain urtean zeharreko domekei jarraiera emoten deutsegu. Ta jarraiera horrek Jesusek bere apostoluei egindako deiagaz hasten da.

Gaurko ebangelio honek ni idei nagusi aurkezten deuskuz:

Lehengokoa: Jaunak gure laguntza eskatzen dau bere Barri Ona zabaltzeko. Sarritan, gaurko kristauak, ondo barneratuta daukagu karidade arloan edo zerbitzu arloan lan egin behar dogula. Jesusek pobreenak zaindu ta justizia landu behar dogula ondo hartzen dogu ta horretan buru belarri lan egiten dogu. Baina horrez gain gaur Jesusek beste beharrizan batzuk betetzera deitzen gaitu: ez gorputzarenak, espirituarenak baino. Ta guk, Jesusen jarraitzaileak bezala, ezin dogu eginkizun hau alde batera utzi: gaurko egun honek Jaunari buruz, bere maitasunari buruz, Jesusi buruz berba egin daigun behar dau. Gaurko mundu honetan “nekatuta ta lur jota” dagoen jentea be egon badago, ta kristuak ezin dogu hori ontzat hartu.

Ebangelioak agertzen deuskun bigarren gauza garrantzitsua: Jesusek gure izenez deitzen gaitu. Ebangelariak apostoluen izenak idazten ditu, ez zelan deitzen ziran jakin dagigun, Jesusek gure izenak ezagutzen dituala ta gure izenez deitzen gaituala jakin dagigun baino. Berarentzat ez gara izenbako indibiduaz beterik osotuta dagoan talde bat; Berak bakoitzaren izena, bere gaitasunak, bere ahalmenak ezagutzen ditu ta bakoitzak daukana Barrio Onaren zerbitzurako jarri dagigun eskatzen deutso. Nire izenez deitzen nauan nik zer egin neike Jesusen barri ona zalbaltzeko? Da gure buruei egin beharko geuntson itauna.

Ebangelio honek guztientzat egindako dei bat da, ez

bakarrik abadeentzat. Barri onaren zalbalkuntzan Jesusek danok behar gaitu. Alanda be gure Bizkaiko eleizak abadeak behar ditu. Egoera ez da batere erraza. Kristau alkarteak danak behar gaitu, abadeak barne. Ondo ikusten dogu zein dan daukagun egoera Arratian: hiru abade Arratia guztirako. Hori dala ta gaur Jesusek be Aitari langileak bialdu dagizan eskatu daigun esaten deusku. Gure elkartetan abadeak sortu daitezan eskatu deiogun Jaunari behin eta berriro.

**FEDE AUTORMENA**

- Autortu dagigun, orain, gure fedea .

**SINISTEN DOT SINISTEN DOT**

Sinisten dozue Jaungoikoa,
Aita ahalguztiduna, zeru-lurren egilea?

Sinisten dozue Haren Seme bakar
Jesukristo gure Jauna.

Sinisten dozue Espiritu Santua,
Eleiza santu ta katolikoa,
santuen alkartasuna,
pekatuen parkamena,
hilen biztuera eta betiko bizitza?

**JAINKO HERRIAREN OTOITZA**

Senideok, gure gizartean eginkizun bat daukagula gogoan izanik, bere Hitzaren testigu izateko indarra eskatu deiogun Jaungoiko Aitari:

- Kristoren Elizearen alde: bere misiolari izatea ez dagiala galdu eta Ebanjelioaren mezua gizaki guztien artean zabaldu dagiala. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Mundu honetako ahaltsuen alde: gizon-emakumeen Jaungoikoaganako bidean oztoporik ez dagiela jarri eta Ebanjelioaren argia guztiek aurkitu dagiela. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Gure gizarteko gaixo, baztertu eta zapalduen alde: ez dagiela aurkitu gugan aurkako jarrerarik, adiskidetasuna eta maitasuna baino. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Gure hildakoen alde: gaur era berezian gogoratzen doguz (        ) guztiak Jainko Aitaren Argia gozatu dagiela. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Hemen alkartuta gagozanon alde, gure famili eta adiskideen alde, eukaristiaren indarrak alkarren zerbitzurako adoretu gaizan. ESKATU DEIOGUN JAUNARI

Jaungoiko Aita, egizu, gure norkeria eta bildurrekin ez dagigula ito zure Semearen salbamen misterioan agertu jakun zure maitasuna. Jesukristo gure Jaunaren bitartez. Amen.




**ESKER ONEKO**

# OTOITZ NAGUSIA

*Jesus ikusi dogu bizia sendotzen eta zabaltzen. Geuk ere agertu deutsaguz gaitzak eta makal aldiak. Orain zutunik, eskerrak emotera gatoz, bizitzako ibilbidean gertu, geure ondoan dogulako*.

Jauna, ez dakigu zelan eskertu gugaitik egin dozuzan gauza guztiak!
Daukagun guztia Zeugandik datorku:
bizitza eta maitasuna, poza eta itxaropena.
Zuk, Jauna, guri izan deskuzun maitasun handiagaitik,
zure Semea bialdu zeunskun mundura gu salbatu gagizan.

***ESKERRAK BIHOTZETIK, AITA JAUNGOIKOA!***

Bera, gure lagun izan zan,
eta gugaitik bere bizitza emon eban.
Adoretsuak izan eta beti egia esan dagigun
Espiritu Santua bialdu eunskun.
Zu gurekin eta gu alkarturik egoteagaitik
poztu egiten gara.
Eta poztu egiten gara baita
gurekin hain ona izan zareala gogoratzean ere.

***ESKERRAK BIHOTZETIK, AITA JAUNGOIKOA!***

Guzti hau dala ta, eskerrak emoten deutsuguz.
Egizu zure Espirituak beti alkartuta egoten lagundu deiskula,
eta Eliza dan familia hau osotzen dogunok
Zure deiari erantzuten eta jarraitzen ahalegindu gaitezala.

***ESKERRAK BIHOTZETIK, AITA JAUNGOIKOA!***

## JAUNARTZEKO OHIKUNEA

**GURE AITA**

Jaunaren mahaian biderako Ogia jan aurretik, Berak

erakutsitako otoitza esan dagigun: ***Gure Aita, zeruetan zarana…***

**BAKEA**

Mahai berean jarteak, anai-arreben arteko hartuemonak sendotu egiten ditu: emon deiogun bakea alkarri!

**JAUNARTZEA**

Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa,
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak, Jaunaren mahaira deituak!

Jauna, ni ez naiz inor Zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naiz.

**JAUNARTZE ONDORENGO OTOITZA**

**EGIN DAGIGUN OTOITZ.**
*(Isil unea)*

Jauna,
bizitzak
gure ahultasunak agertzen deuskuz
eta gure mugak aurrean ipinten.

Gure bizia Zugaz lotuta egon daitela,
gogo beroz eta atseden barik
zure bila ibili gaitezala,
gure begiek zure begirada bilatu dagiela
eta gure besoak
zure laguntza aurkitu arte luzatu;
Jauna, zure Espirituak
aurrera egiteko,
adoretsu eta ausarditsu egin gaizala,
eta batez ere,
bideko lagunekin,
Zugandik hartzen dogun indarra
alkarbanatzeko gai. Amen.

## AZKEN AGURRA

- Elizatik urtetean, ahalegindu gaitezan guztiak maitatzen. Jaungoikoak guztiok maite gaitu; geuk ere ez dagigula inor itzi gure maitasunetik kanpo.

## BEDEINKAPENA

+ Bedeinkatu eta gorde gagizala Jainko Ahalguztidunak, Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak. - Amen

## Abestia

***Eskerrik asko, Jauna…***

Goazen danok Jaunaren bakean.

- Eskerrak Jainkoari